# Jaunaren aurkezpena
(Otsailaren 2an)

**Oharra**
Eleizearen atzekaldean jarri daiteke mahaitxo bat: han, ur bedeinkatua eta hisopoa, kandelak (abadearentzako eta laguntzaileentzako), poxpoloak eta txostentxo hau edo altarako liburua…
Ohargileak egin daike sarrera-oharra, ondoren kandelak biztu, eta abadeak bere ohar agurra. Eleiztarrak bedeinkatu ondoren, kantu artean, presbiteriorantza abiatzen dira kantu artean, eta hara helduz aintza abesten da. Kandelak otoitza esan ondoren amatatu daitekez, eta aurrera jarraitu mezeaz.

## SARRERAKO OHARRA (*Ohargileak*)

Senideok: gure ohituretako asko euren esanguratik hustu egin doguz, eta beste esangura batez darabilguz, desitxuratuta eta sasi-esanahiez. Gaurko hauxe dogu bat: kandelario. Oharretan eta otoitzetan esango dogunetik kanpoko ohikeriatan galdu gara. Gure kandelen eta ohituren esanahia eskuratu nahi dogunok, ba, jarraitu daigun arretaz sarrera-ohikune hau; eta kandelak biztuta, urten daigun bidera jatorkun Jaunaren bila.

¡Atención, hermanos! ¿Coincide lo que queremos hacer con lo que la Liturgia nos brinda? ¿Qué expresamos con nuestras velas? El cura lo va a ir diciendo en la monición de entrada y en las oraciones. Las lecturas nos lo plasmarán plásticamente. Sigamos atentos su desarrollo: que Jesús es la Luz que nos ilumina, y que lo llevamos para que ilumine nuestro entorno y todo el mundo. ¡No lo olvidemos!

## Kandelak biztu daiezela…

## Abadearen agurra

Senide maiteok: orain berrogei egun ospatu gendun, pozez beterik, Jaunaren jaiotza-eguna.

Gaur, barriz, Jesus Eleizara eroan eben eguna dogu; holan, itxura baten, legea bete baino besterik ez eban egiten; baina benetako fededunen herriari bidera etorkon. Espiritu Santuak erakarririk, han egozan Eleizan Simeon ta Ana zoriontsuak; eta Espiritu berak argituta, umetxo harengan Jauna ezagutu eben, eta pozik iragarri autormen hau. Geu ere, Espiritu santuak batuta, goazen Jaunaren altarara, Kristoren bidera. Ogia zatitzean aurkitu eta ezagutuko dogu bera, barriro aintzaz agertuko jakun arte.

**Egin daigun otoitz**

Jainko Jauna, egiazko argia, betiko argiaren egile ta zabaltzailea:
isuri eizu fededunen bihotzetan betiko argiaren distirea;
Eleiza honetan kandela honeek argitzen gaituen guztiok
zure aintzaren argira heldu gaitezan.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
R./ Amen.

(Eleiztarrak eta kandelak ureztatu eta presbiteriorantza abiatu, abesti artean):

**Jesus,** munduko argia,
Jesus, zinezko egia,
Jesus betiko bizia.

Gure bihotz barruan
biztu zure argia;
gaitezen gu munduan
argi Jainkoz betia.

Etxeetan, herrietan
izan danen nausia,
guztiok zure baitan
dezagun poz bizia.

**Aintza zeruetan Jaungoikoari...**

**EGIN DAIGUN OTOITZ**

Jainko ahalguztidun betikoa,
zure Seme bakarra, gurea lako giza izatez jantzirik,
aurkeztu eben gaurko egunez Jerusalemgo jauretxean;
egizu, Jaun handi horrek,
aurkeztu gaitezala geu ere bihotz-garbi zure aurrean.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.
AMEN

## HITZAREN LITURGIA

**Hb 2, 14-18**

Hebertarrei egindako idazki txatal honek Jesusen misteriora hurreratzen gaitu, eta Jesus ezagutzen laguntzen deusku. Begira noraino egiten dan gizakiarekin bat Jainkoa bere Semeagan!

Este trozo de la carta a los Hebreos nos ayuda a introducirnos en el misterio de Dios. Agradezcamos que se solidarice de esta manera con nosotros.

**Hebertarrei egindako liburutik**

Familia bereko seme-alabek odol eta haragi bat bera daben lez, Jesusek giza odol-haragiak hartu zituan, bere heriotzaz heriotzaren nagusia dan deabrua ezerezteko, eta heriotzearen bildurrez euren bizitza osoan esklabo bizi ziranak askatzeko; ha ez zan-eta aingeruei laguntzera etorri, Abrahamen jatorrikoei baino. Horregaitik, gauza guztietan bere senideen antzeko izan behar eban, abade nagusi errukitsu eta Jainkoari jagokozan gauzetan fidagarri izateko, herriaren pekatuak parkatzeko gai.

Bera ere nekeetan probatua izan zalako, gauza da orain probaldian dagozanei laguntzeko.

Jaunak esana.

**Erantzun-salmoa**:

**R/. EGIN TXALO ERREGE DAN JAUNAREN AURREAN**

Ateburuok, goratu zaiteze,
aspaldiko ateok, luzatu zaiteze,
Errege ospetsua sartu daiten. R./

Nor da errege ospetsu hori?
Jaun indartsu eta ahaltsua,
guduan Jaun ahaltsua. R./

Ateburuok, goratu zaiteze,
aspaldiko ateok, luzatu zaiteze,
Errege ospetsua sartu daiten. R./

Nor da errege ospetsu hori?
Gudari-taldeen Jauna,
bera da errege ospetsua. R./

**Lk 2, 22-40**

Hona Lukas ebanjelariak zelan batzen dauen bere aldiko tradizinoa eta beteazoten dauan Jesusengan; esanguratsua da ebanjelio-zati hau, eta eredugarriak bertan agertzen diran atso-agurak.

El evangelista se encarga de presentarnos la tradición y el ejemplo a seguir; y, en la profecía, se anuncia la Luz para todos los pueblos.

Egin deiogun harrerea, zutunik, aleluia abestuz.

**Aleluia**

**† Jesukristoren ebanjelioa s. Lukasen liburutik**

Moisesen Legearen arabera, amari garbikuntza egiteko unea heldu jakonean, gurasoek Jerusalemera eroan eben Jesus, Jaunari aurkezteko. [Izan ere, honan dago aginduta Jaunaren legean: «Lehen-seme

guztiak Jaunari sagaratuko jakoz». Jaunaren legean ezarritako oparia ere eskeini behar eben: «Usapal bi edota usakume bi».

Bazan Jerusalemen Simeon izeneko gizon bat, gizon zintzo eta jainkozalea, Jainkoak Israel noiz kontsolatuko zain egoana. Espiritu Santua beragaz eban, eta aditzera emon eutson ez zala hilgo Jaunaren Mesias ikusi arte. Eta Espiritu Santuak eraginda tenplura joan zan.

Gurasoek Legeak agintzen ebana beteteko Jesus umea tenpluan sartzean, hartu eban Simeonek umea besoetan eta Jainkoa bedeinkatu eban, esanez:

«Orain itzi daikezu, Jauna,
zeure morroi hau bakean hilten,
Zeuk agindu zenduan lez.
Ikusi dabe nire begiok Zugandiko salbamena,
herri guztien aurrean Zuk aurkeztua:
Nazinoak argitzeko argia
eta zure herri Israelen ospea».

Umearen aitamak harriturik egozan umeagaitik esaten ziranakin. Eta Simeonek bedeinkatu egin zituan, eta umearen ama Mariari esan eutson: «Begira, hau israeldar asko jausteko eta beste asko jagiteko ipinita dago; eztabaida sortzen dauan ezaugarri izango da, holan bihotz askotako asmoak agirian gelditu daitezan. Eta zeuri ezpata batek aldez alde zulatuko deutsu arimea».

Jaunak esana.

## HOMILIA

**(Lau eskari dagoz:  eskari bakotxean kandela txiki bat biztu eta zirioaren alboan jarri).**

## ESKARIAK

† Senideok: gizaldiz-gizaldi zaintzen gaituen Jainkoari zuzendu deioguzan gure eskariak:

—Gure Eleizbarrutiaren alde: Eleiztar guztien bihotzak eta adimenak argitzeko benetako argi izan daiten Ebanjelizatze Egitasmo honetan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Eragozpenak aurkitzen dituen familien alde: maitasun-iturri dan Jainkoagana hurreratu daitezan itxaropenez, eta aurkitu daien harengan bizi izateko poza eta alkar maitatzeko adorea, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Sinismen ezaugarriak euren esanguran barik, beste edozer lortzeko erabilten dituenen alde: aurkitu daien benetako esangurearen poztasuna, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Jaunaren aurkezpen egun honetan eukaristiara hurreratu garanon alde: gure bihozbarritzea eta ebanjelioaganako zintzotasuna bilatu daiguzan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

† Egizu, Jauna, ez gaitezala ezelango ilunpetan galdu, zeure argitasunean bizi izan baino. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**DIRU BATZEA, MAHAIA PRESTATZEA**

**ESKEINTZEN AURKEZPENA**

† Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi ta betiko

zorionaren edari.

—Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti.

† Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eleiza osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.

—Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko.

**OPARIEN GAINEKO OTOITZA** (ABADEAK)
Atsegin dakizula, Jauna,
Eleizeak pozik egiten deutsun eskeintza:
Zeuk nahi izan dozu
zure Seme maitea Bildots garbi lez
Zuri eskeinia izatea munduaren bizirako.
Errege bizi da-ta, gizaldi eta gizaldietan.
Amen.

**Prefazioa**

Jauna zuekin...............................Eta zure espirituarekin.
Gora bihotzak..............................Jaunagan daukaguz.
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari.. .Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.

Zu bezala betikoa dan zure Semea
gaurko egunez eskeini eben jauretxean,
eta Espiritu Santuak adierazo eban,
Israelen ospea eta nazinoen argia zala bera.

Horregaitik, pozez beterik

Zuk bialdutako Salbatzailearen bidera goazala,
aingeru eta santu guztiekin goresten zaitugu,
beti eta beti [esaten] abesten deutsugula:

**SANTU, SANTU, SANTUA**
diren guztien Jainko Jauna.
Zeru-lurrak beterik daukaz zure distirak.
Hosanna zeru goienetan!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.
Hosanna zeru-goienetan!

## Eukaristi otoitza: II.a (Abadeak)

Santu zara, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri.

Santu egizuz, ba, ogi eta ardao honeik,
zeure Espiritua isuriz,
Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz † eta Odol egin daitezan guretzat.

Berak, saldu ebenean,
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta eskerrak emonez,
zatitu eban, eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

*Hartu eizue ta jan guztiok honetatik:*
*hau neure gorputza da-ta,*
*zuentzat emongo dana.*

Afal-ondoan bardin, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

*Hartu eizue ta edan guztiok honetatik:*
*hau neure odolaren kaliza da-ta,*
*itun barri eta betikoaren odola,*

*zuentzat eta guztientzat*
*pekatuak parkatzeko isuriko dana.*
*egizue hau neure oroigarri.*

V./ Hau da sinismenaren misterioa.

R./ Hil eta biztu zarala, Jauna,
zu barriz etorri arte
hau dogu hau Barri Ona.
(**edo**)
R./ Ogi-ardao honeik hartzean
zure heriotza dogu autortzen
zu, Jauna, etorri artean.

Horregaitik, Jauna,
zure Semearen heriotzea ta biztuerea gogoratuz,
biziaren ogia ta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
zuri eskerrak emonaz
altaran zure zerbitzari onartu gaituzulako.

Eta apalik eskatzen deutsugu,
Kristoren gorputz-odolak hartzen doguzanok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

Gogoan izan, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Franzisko, gure aita santuagaz,
Mario, gure gotzaiagaz,
eta Eleiz gizon-emakume guztiekaz batean.
Gogoan izan, Jauna,
biztuteko itxaropenean joan diran:
**I..., I...,**
eta gure etxeko, senide ta hildako guztiak:
hartu egizuz zure aurpegiaren argitan.

Erruki zakiguz, arren, guk guztiok
betiko bizitzea jaritsi dagigun,
Jaungoikoaren Ama Maria dohatsuarekin,
Apostolu santuekin,
eta gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diren santuekin;
eurekin batean goratu zaiguzan.
Jesukristo zure Semearen bitartez.

Honen bitartez, honekin eta honengan
zuri, Aita, Jaungoiko ahalguztidun horri
Espiritu Santuarekin batean
ospe ta aintza guztia gizaldi ta gizaldi guztietan.
— Amen.

*Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz*
*bildur barik esan dagigun.*

GURE AITA zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun hontako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
eta ez gu tentaldira eroan,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea

noiz etorriko dan zain gagozela.
—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa denez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.
—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri.

## JAUNGOIKOAREN BILDOTSA

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: emoiguzu bakea

## **JAUNARTZEA** (Abadeak eta herriak)

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

- JAUNA, NI EZ NAZ INOR ZU NIRE ETXEAN SARTZEKO, BAINA ESAIZU HITZ BAT ETA OSATUKO NAZ.

## JAUNARTZE ABESTIA

Gure ondoan, Jauna, egon zaitez beti,
Zu zara gure bide eta gure bizi. (bir)

Zu zara, Jauna, Zu gure artzain, / eta gu zure artalde,
nora ezean ibiltzen gara / ardi gaixook zu gabe.
Nora ezean ibiltzen gara / ardi gaixook zu gabe.

Zuk ezagutzen gaituzu danok. / Zu zara gure artzain on,
Zure ondoan elkar maitatuz, / gaitezela beti egon.
Zure ondoan elkar maitatuz, / gaitezela beti egon.

Zu gure poza ta itxaropen / Zurekin goaz aurrera.
Egunen baten zure betiko / artaldera izatera.
Egunen baten zure betiko / artaldera izatera.

**AZKEN OTOITZA**)

Simeonen itxaropena bete dozun Jauna,
emoiguzu, Eukaristia honi esker,
zeure graziaren betea;
eta egizu, harek, hil aurretik,
Kristo besoetan hartzeko poza izan eban lez,
geuk ere, Jaunaren bidera goazenok,
betiko bizia jadetsi daigula.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

## OHARRAK

**Azken agurra**

Urrundu gaitezan sasikerietatik. Ez daigula kandela hau beste ezertarako erabili Jesus dogula argi

adierazteko baino. Biztu daigun otoitz egiten dogunean, gaisorik gertatzen garanean edo triste gagozanean; eta sentitu daigun Jesusek zelan argitzen gaituan.
Alejémonos de supercherías. Expresemos con esta candela que es Jesús quien ilumina nuestra vida. Y encendámosla cuando hagamos oración, o estemos enfermos o tristes; y sintamos que Jesús nos ilumina.

**Onespena**

† Jauna zuekin
—Eta zure espirituarekin.
† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak † eta Espiritu Santuak.
—Amen.

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.